(13ª)

Ezpata dantza (1).

Gaur
Batista Biribill
Dantzen ongui abill,
Ez dec ezpataric
Ire parecoric;
Ire cabriolac
Ozt orta-chirolac
Oi dirquic seguitzen
Ta compasa artzen.
Arrastacacoac
Eta goracoac
Dituc alacoac,
Non icustecoac,
Aurreronz, atzeronz,
Eta barterreronz,
Ez dec dantzaric
I bezalacoric.
Soñu zar pisoa,
Onenetacoa,
Joteen dec chambolin
Aire onarequin,
Onec badic emen
Orain, guero ta len
Asco eguiteco
Ongui dantzatzeco.
Aurrera corri,
Atzera corri,
Beti ezpata airean,
Ez zac onerguero
Ez orain ez guero
Iñor sarrico gañean.

(1) Baile romano llamado Pirrico